# URTEAN ZEHARREKO XXVII. DOMEKA

## A urtean

### I. IRAKURGAIA

*Israel da Jaun ahalguztidunaren mahastia.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 5, 1-7

Nire adiskidearen izenean nator kantatzera
adiskidearen eta beraren mahastiaren kantua.
Nire adiskideak baeban mahastia, mendi-malda ugaritsuan.
Lurra harrotu, harriak kendu
eta landare aukeratuak landatu ebazan.
Erdian talaia eraiki eban eta dolarea egin.
Mahats ona itxaroten eban, eta sasimahatsa emon eutson.

Orain, bada, Jerusalemgo bizilagunok,
Judako gizon-emakumeok,
erabagi zeuek nire eta nire mahastiaren arteko auzia.
Zer egin neikion neure mahastiari, egin deutsadanaz gainera?
Mahats ona itxaroten neban; zergaitik emon deust sasimahatsa?

Esango deutsuet, bai, zer egingo deutsadan neure mahastiari:
hesia kenduko deutsat, larre bihurtu dadin;
harresia zulatuko, zapaldu dagien;
lugorri bihurtuko dot: ez dabe inausiko, ez jorratuko,
eta sasiak eta laharrek hartuko dabe;
bertan euririk ez egiteko aginduko deutset hodeiei.

Horra, bada: Israel da Jaun ahalguztidunaren mahastia,
Judako herria haren landare-arlo kutuna.
Zuzenbidea itxaroten eban Jaunak harengandik,
eta horra: zuzenbakokeria!
Justizia itxaroten eban, eta horra: aieneak!

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 80 [79], 9 eta 12. 13-14. 15-16. 19-20 (R/. Is 5, 7a)

R/. **Israel da Jaunaren mahastia.**

V/. Egiptotik mahatsondo bat atara zenduan

eta landatu, jentil-herriak kanpora botaz.
Itsasoraino zabaldu ebazan adarrak,
Eufrates ibairaino muskilak. R/.

V/. Zergaitik zulatu deutsazu inguruko hesia?
Holan, bidaztiek frutua lapurtzen deutsoe,
basurdeek triskatzen, basapiztiek hondatzen. R/.

V/. Jainko ahalguztiduna, bihurtu, arren,
begira zerutik, ikusi!
Hartu egizu zeure mahatsondoaren ardura,
zaindu zeure eskuz landatu dozuna. R/.

V/. Ez gara Zugandik inoiz aldenduko;
Zuk bizia emongo deuskuzu
eta guk dei egingo deutsagu zure izenari.
Oi Jauna, Jainko ahalguztiduna, erabarritu gagizuz;
erakutsi aurpegi argia, salbatu gaitezan. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Egizue holan,*
*eta bakea emoten deuskun Jainkoa zeuekin izango dozue.*

San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindako

epistolatik

*Flp* 4, 6-9

Senideok: Ez izan ezeren kezkarik, gorabehera guztietan agertu zeuen eskabideak Jainkoari, otoitz eta erregu eginez eta eskerrak emonez. Eta guk pentsatu geinkena baino handiagoa dan Jainkoaren bakeak gordeko ditu zuen gogo-bihotzak Kristo Jesusen bidez.

Gainerakoan, senideok, hartu egizue aintzakotzat egiazko, gizabidetsu, zuzen eta garbi dan guztia, maitagarri eta goresgarri, bertutetsu eta onargarri dan guztia. Egizue nigandik ikasi, hartu eta entzun zenduena eta nigan ikusia. Eta bakea emoten deuskun Jainkoa zeuekin izango dozue.

Jaunak esana.

## Aleluia

Ik. *Jn* 15, 16

R/. **Aleluia.**

V/. Neuk aukeratu zinduedazan zuek,

eta eginkizun hau emon deutsuet:
frutu ugaria eta iraunkorra emon dagizuela edonon,
dino Jaunak. R/.

## EBANJELIOA

*Beste nekazari batzuri itziko deutse mahastia.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 21, 33-43

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen abadeburuei eta herriko zaharrei: «Entzun parabola hau: Behin baten, nagusi batek mahastia landatu eban eta hesiz inguratu; bertan dolara egin eta torrea eregi eban; gero, nekazari batzuri errentan itzirik, urrutira joan zan.

Mahatsa batzeko sasoia heldu zanean, bere morroiak bialdu zituan nekazariakana, frututik egokion partea jasotzera. Nekazariek, baina, morroiei heldu eta bata jo, bestea hil eta bestea harrikatu egin zituen. Barriro beste morroi batzuk bialdu zituan, aurrekoan baino gehiago, eta hareei be beste hainbeste egin eutsien. Azkenean, bere semea bialdu eutsen, bere artean esanez: “Izango deutsoe begirune nire semeari horraitino”.

Nekazariek, ostera, semea ikustean, esan eutsoen alkarri: “Oinordekoa dok. Hil daigun eta geuretzat izango dok

ondarea”. Heldu, mahastitik kanpora bota eta hil egin eben». Jesusek itaundu eutsen: «Zer egingo deutse nekazari horreei mahasti-jaubeak, bihurtzean?»

Erantzun eutsoen: «Errukirik barik hilko ditu, eta bere sasoian frutua emongo deutsoen beste nekazari batzuri itziko deutse mahastia».

Jesusek esan eutsen: «Ez dozue Liburu Santuan behin be irakurri:

“Etxegileek baztertutako harria giltzarri gertatu da.
Jaunak egin dau hori, gure begien harrigarri?”

Horregaitik dinotsuet: Jainkoaren erreinua zuei kendu eta frutua atarako deutson herri bati emongo jako».
Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XXVII. DOMEKA
## B urtean

### I. IRAKURGAIA

*Eta biak bat izango dira.*

Hasiera liburutik

*Has* 2, 18-24

Jainko Jaunak esan eban: «Ez da on gizona bakarrik egotea; emon deiodan berari dagokion laguntza».

Jainko Jaunak landako abere eta zeruko hegazti guztiak moldatu ebazan lurretik eta gizonari eroan eutsozan, zein izen emoten eutsen ikusteko; honan, bada, bizidun guztiek gizonak ezarritako izena daroe. Beraz, gizonak izena ezarri eutsen abere guztiei, zeruko hegazti guztiei eta piztia guztiei; baina ez eban aurkitu berari egokion laguntzarik.

Orduan, Jainko Jaunak lozorroan murgilduarazo eban gizona. Loak hartu ebanean, saihets-hazur bat kendu eutson eta hutsunea haragiz bete. Gizonari kendutako saihets-hazurraz emakumea moldatu eban Jainko Jaunak, eta gizonari eroan eutson. Honek esan eban:

«Hau bai dala nire hazurretik datorren hazur,
nire haragitik datorren haragi.
Emakume izango da deitua,
gizakumeagandik izan da-eta hartua».

Horregaitik, gizasemeak bere aita-amak itziko ditu eta emazteagaz alkartuko da, eta biak bat izango dira.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 128 [127], 1-2. 3. 4-5. 6 (R/. ik. 5)

R/. **Jaunak bedeinkatu gagizala**
**geure bizitzako egun guztietan.**

V/. Zorionekoa Jaunari begirune deutsona
eta haren bideetan dabilena!
Zeure lanaren frututik dozu jango,
zoriontsu izango zara eta ondo jatzu joango. R/.

V/. Emaztea mahatsondo emonkorraren antzeko
zure etxe barruan;
seme-alabak olibondo-kimuen antzeko
zure mahai inguruan. R/.

V/. Hara zelan izango dan bedeinkatua
Jaunari begirune deutsona!
Bedeinkatu zagizala Jaunak Siondik,
gozatu zaitezala Jerusalemen zorionaz
zeure bizitzako egun guztietan. R/.

V/. Ikusi dagizuzala zeure umeen umeak!
Bakea Israeli! R/.

## II. IRAKURGAIA

*Santutzailea eta santu eginak,*
*guztiak jatorri batetik datoz.*

Hebrearrei egindako epistolatik

*Heb* 2, 9-11

Senideok: Aingeruen pareko egina izan dan Jesus ha aintzaz eta ohorez koroatua ikusten dogu, jasan eban heriotzagaitik; izan be, Jainkoaren onginahiaz, guztien onerako jasan eban-eta heriotza.

Jainkoak, gauza guztien sorburu eta helburu danak, seme-alaba asko aintzara eroan gura eban. Egoki zan, beraz, hareek salbazinora gidatuko ebazan burua, Jesus, oinazeen bidez bete-beteko egitea. Izan be, bai santu egiten dauan Jesusek, bai honek santu egiten dituanek, jatorri bera dabe danek. Horregaitik, Jainkoaren Semeari ez deutso lotsarik emoten honeei anai-arreba deitzeak.

Jaunak esana.

Aleluia

*1 Jn* 4, 12

R/. **Aleluia.**
V/. Alkar maite badogu,
Jainkoa gugan dago,

eta haren maitasuna bere betera heldu da gugan. R/.

## EBANJELIOA

Ebanjelio hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Jainkoak bat egin dauana*
*ez begi gizakiak banatu.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 10, 2-16

Aldi haretan, hurreratu jakozan fariseu batzuk Jesusi eta, ha zertan harrapatuko, itaundu eutsoen: «Bidezko ete jako gizonari andrea iztea?» Harek erantzun eutsen: «Zer agindu eutsuen horren gainean Moisesek?» Eta hareek: «Moisesek dibortzio-agiria idatzi eta emaztea izteko baimena emon euskun».

Jesusek esan eutsen: «Zeuen burugogorkeriagaitik emon eutsuen Moisesek lege hori. Baina, munduaren hasieratik, Jainkoak gizonezko eta andrazko egin zituan; horregaitik, gizasemeak bere aita-amak itziko ditu eta emaztearekin alkartuko da, eta biak bat izango dira. Beraz, aurrerantzean ez dira bi, bat baino. Holan, bada, Jainkoak bat egin dauana ez begi gizakiak banatu».

Gero, etxean, arazo berberari buruz itaundu eutsoen ikasleek. Jesusek esan eutsen: «Bere emaztea itzi eta beste bategaz ezkontzen danak adulterioa egiten dau lehenengoaren kontra; eta bere senarra itzi eta beste bategaz ezkontzen dan emazteak, adulterioa egiten dau era berean».

Umeak eroan eutsoezan Jesusi, ikutu egizan; ikasleek, baina, hasarre egiten eutsien. Hori ikustean, hasarratu egin zan Jesus eta esan eutsen: «Itzi umeei Nigana etortzen, ez galarazo, ze, holakoena da Jainkoaren erreinua. Benetan dinotsuet: Jainkoaren erreinua ume batek lez hartzen ez dauana ez da ezelan be bertan sartuko».

Eta, besarkatuz, bedeinkatu egiten zituan umeak, eskuak gainean ezarriz.

Jaunak esana.

---

Ebanjelioa era laburrean.

*Jainkoak bat egin dauana*
*ez begi gizakiak banatu.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 10, 2-12

Aldi haretan, hurreratu jakozan

fariseu batzuk Jesusi eta, ha zertan harrapatuko, itaundu eutsoen: «Bidezko ete jako gizonari andrea iztea?» Harek erantzun eutsen: «Zer agindu eutsuen horren gainean Moisesek?» Eta hareek: «Moisesek dibortzio-agiria idatzi eta emaztea izteko baimena emon euskun».

Jesusek esan eutsen: «Zeuen burugogorkeriagaitik emon eutsuen Moisesek lege hori. Baina, munduaren hasieratik, Jainkoak gizonezko eta andrazko egin zituan; horregaitik, gizasemeak bere aita-amak itziko ditu eta emaztearekin alkartuko da, eta biak bat izango dira. Beraz, aurrerantzean ez dira bi, bat baino. Holan, bada, Jainkoak bat egin dauana ez begi gizakiak banatu».

Gero, etxean, arazo berberarari buruz itaundu eutsoen ikasleek. Jesusek esan eutsen: «Bere emaztea itzi eta beste bategaz ezkontzen danak adulterioa egiten dau lehenengoaren kontra; eta bere senarra itzi eta beste bategaz ezkontzen dan emazteak, adulterioa egiten dau era berean».

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XXVII. DOMEKA
## C urtean

### I. IRAKURGAIA

*Zintzoa bere leialtasunak biziarazoko dau.*

Habakuken Profezia liburutik

*Hab* 1, 2-3; 2, 2-4

Noiz arte, Jauna, jardun behar dot Zuri erreguka,
Zuk entzun barik?
Noiz arte jardun behar dot oihuka gogorkeriaren aurka,
Zuk salbatu barik?
Zergaitik ikusiarazoten deustazu horrenbeste bidebakokeria?
Zelan egon zeintekez zapalketari begira?
Hondamen eta gogorkeria ugari aurrean,
hasarreak eta burrukak nonahi.

Orduan, Jaunak erantzun eustan:

«Idatzi egizu agertuko deutsudana,
ezarri taulatxuetan, erraz irakurtzeko eran.

Ikuskari hau ez da beteko epea burutu arte,
baina badoa helburuantz, ez dau huts egingo;
luzatzen bada, zuk itxaron, berandu barik helduko da-eta.
Harroak ez dau bakerik beragan;
zintzoa, ostera, bere leialtasunari esker biziko da».
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 95 [94], 1-2. 6-7c. 7d-9 (R/. 7d. 8a)

R/. **Entzungo ahal dozue gaur Jaunaren berbea:**
**«Ez gogortu zeuen bihotza».**

V/. Zatoze, egin deiogun poz-oihu Jaunari,
poz-irrintzi, salbatzen gaituan harriari.
Aurkeztu gakiozan eskerrak emonez,
Egin daigun jai txaloka eta kantari. R/.

V/. Zatoze, gurtu daigun ahuspezturik,
belaunikatu gaitezan egin gaituan Jaunaren aurrean.
Bera da-eta gure Jainkoa,
eta gu harek larraturiko herria,
haren zainpeko artaldea. R/.

V/. Entzungo ahal dozue gaur haren ahotsa:

«Ez gogortu bihotza Meriban lez,
Masako egunean basamortuan lez,
tentatu egin ninduen-eta zuen gurasoek,
probatu, Nik eginak ikusi arren». R/.

## II. IRAKURGAIA

*Ez izan gure Jauna autortzeko lotsarik.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako bigarren epistolatik

*2 Tm* 1, 6-8. 13-14

Anaia maitea: Gomendatzen deutsut indarbarritu dagizula nik eskuak ezartzean Jainkoak emon eutsun dohaia, Jainkoak ez deusku-eta bildurti egiten gaituan espiritua emon, indarra eta maitasuna emoten eta geure buruaren jaube egiten gaituan espiritua baino. Ez izan, ba, gure Jauna autortzeko lotsarik, ezta lotsatu be harengaitik kartzelan dagoan honetaz; bestela baino, Jainkoaren indarraz fidaturik, eroan egizuz nekeak nigaz batera Barri Onaren alde.

Hartu egizuz jarraibidetzat, Kristo Jesusengan oinarritzen diran sinismenaz eta maitasunaz nigandik entzun dozuzan hitz osasungarriak.

Zaindu gordailu eder hau, gugan bizi dan Espiritu Santuaren indarraz.
Jaunak esana.

## Aleluia

*1 P* 1, 25

R/. **Aleluia.**
V/. Jaunaren hitzak betiko dirau.
Hitz hau zuei iragarri jatzuen Barri Ona da. R/.

## EBANJELIOA

*Sinismena bazendue!*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 17, 5-10

Aldi haretan, Apostoluek esan eutsoen Jaunari: «Handiagotu sinismena gugan». Jaunak erantzun eutsen: «Sinismena bazendue, mostaza-hazia baizen txikia izanik be, ikondo honi “urten hortik eta landatu itsasoan” esango zeunskioe, eta obedidu egingo leuskizue».

«Jo daigun, zuetariko batek morroia daukala solo-beharretan edo ardi jagoten. Morroia etxeratzean, “hator behingoan mahaira” esango ete deutso?

Ez ete deutso beste hau esango: “Prestatu egidak afaria, jantzi amantala eta zerbidu nagik, nik afaldu bitartean; ondoren, afalduko dok heuk?” Morroiari esker ona zor ete deutso, agindua bete daualako?

Zuek be gauza berbera: agindutako guztia egin eta gero, esan: “Morroi gauzeztanak gara; egin behar genduana besterik ez dogu egin”».

Jaunak esana.